

# Yucatango maia hizkuntza

**Yucatango maia** (hizkuntza hartan, *Màaya t'àan*) maia hizkuntza bat da, Mexikoko Yucatán penintsulan hitz egiten dena, Mexikon hiztun gehien duen maia hizkuntza. Familia berean hizkuntza hauek ditugu:

- Mopán hizkuntza: Belizen hitz egiten da. 10.000 hiztun.
- Itzá hizkuntza: Petenen hitz egiten zen. Desagertuta.[2]
- Lacandón hizkuntza: Izen bereko oihanean, Chiapas, mila hiztun inguru.

Beraz, *Yucatango maia hizkuntzak* terminoarekin, pluralean, familia bat adieraz daiteke eta, baita ere, singularrean, Yucatango maia hizkuntza zehatz bat.[erreferentzia behar] Bigarren kasu honetan, Yucatango maia Mexikoko Quintana Roo, Campeche eta Yucatán estatuetan erabiltzen da.

Yucatango maia Mexikon hiztun gehiago duen maia hizkuntza a: 800.291 hiztun ditu, gehienak goian aipatutako estatuetan;[3] dena dela badira komunitate txiki batzuk Guatemalan (700 inguru) nahiz Belizen (5.000). Literatura aberatsa du, eta oro har kulturalki zein sozialki bizi-bizirik dabilen hizkuntza da. Badira irakasteko akademiak eta ikastetxe bereziak.

**Yucatango maia**

Yucatango maia hizkuntzaren hedadura.

| Datu orokorrak | |
|---|---|
| **Lurralde eremua** | Mexikoko Quintana Roo, Campeche eta Yucatán. |
| **Hiztunak** | 800.291[1] |
| **Ofizialtasuna** | Ofiziala Mexikon. |
| **Eskualdea** | Mesoamerika |
| **UNESCO sailkapena** | 3 arrisku ziurran |
| **Araugilea** | Instituto Nacional de Lenguas Indígenas |
| **Hizkuntza familia** | |
| giza hizkuntza<br>Ameriketako jatorrizko hizkuntzak<br>Mesoamerican languages (en)<br>maia hizkuntzak<br>Yucatecan languages (en) | |
| **Informazio filologikoa** | |
| **Hizkuntza-tipologia** | aditza objektua subjektua, hizkuntza eranskaria, subjektua aditza objektua eta hizkuntza ergatiboa |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa |
| **Hizkuntza kodeak** | |
| **ISO 639-3** | yua |
| **Ethnologue** | yua (http://www.ethnologue.co |

## Eduki-taula


**Ofizialtasuna**
**Aldaerak**
**Idazkera**
**Lexikoa**
Hitz batzuk
Zenbakiak
Ohiko esaldi batzuk
**Erreferentziak**
**Kanpo estekak**


## Ofizialtasuna

Mexikon, 2003ko Hizkuntza Eskubideen Lege Orokorraren ondorioz, Mexikoko beste bertako hizkuntzak bezala, hizkuntza nazionaltzat onartuta dago.

| | |
|---|---|
| | m/language/yua) |
| **Glottolog** | yuca1254 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/yuca1254) |

# Aldaerak

Hiztunek, orokorrean, bi aldaera bereizten dituzte:

- )“Jach maya”: aldaera zaharrena eta garbiagoa. Zenbait herri baztertuetan erabiltzen da oraindik eta baita adineko jendea.
- )“El xe'ek”: aldaera modernoa, gazteek erabiltzen dutena; espainieraren elementu asko ditu. [4]

# Idazkera

Konkistaren ondoren Yucatango maia alfabeto latinoaren bidez idazten da. Konkista baino lehen maia herriak bazuen idazteko beste sistema bat; sistema horren oinarria glifoen edo ideogramen erabileran oinarritzen zen. Gaur egun erabiltzen den alfabetoa 1984an adostua izan zen nahiz eta oraindik sektore batzuk erabat ez onartu. Egun Mexikon argitaratzen diren publikazioetan hori da erabiltzen dena.


Maia hizkuntzaren glifo bat.

| | | | | | | | | | | | | | | | | | | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| a | b | ch | ch' | e | h | i | k | k' | l | m | n | o | p | p' | s | t | t' | ts | ts' | u | w | x | y | ' |

Idazkeraren ikuspuntutik, bestetik hiztegi desberdinak daude argitaratuta. Tradizionalena Juan Pío Pérez-ek 1898an argitaratu zuen *Coordinación alfabética de las voces del idioma maya* hiztegia dugu. Hiztegi hori XIX. mendean zehar aipatutako Juan Pío Perezek Pedro Beltranekin batera hitz bilduma aberatsa da. Joan den mendearen bukaeran, 1980an, Alfredo Barrera Vásquezek *Diccionario Maya-Español, Español-Maya* koordinatu zuen (Mexiko: Cordemex). Liburu horretan maia hizkuntzaz espezialistak diren bi intelektual ezagunek kolaboratu zuten: Juan Ramón Bastarrachea eta William Brito Sansores.

# Lexikoa

## Hitz batzuk

AH: jauna Soskil: heneken landarearen zuntza Puch: zanpatu Tuch: zilbor Purux: tripaundi T'el: oilar Much: apo Tunich: harri Hots': etzetik janaria ateratzea (eskuz edo koilaraz) K'olis: burusoila Xix: janari edo edari hondarra Malix: arrunt, arrazarik gabekoa, esaterako txakur Nojoch: handi Báaxal: jostailu Mulix: ile kizkur Wix: orina Hanal: janari Nah: etxe Pixan: hildakoa, espiritu Tirixtá: diarrea Xik': besape Kirits: zikin Ka' al: itsusi Max: tximu Otoch: etxe Pech: kaparra Uk': xorri Xux: azkarra Alux: galtzagorri antzeko pertsonai mitologikoa Chel: ilehori Chich, o chichi: amona Dzots: saguzarra Uay: azti Míis:erratza Mis:katu

### Zenbakiak

1 - Jun
2 - Ka'a
3 - Óox
4 - Kan
5 - Jo'
6 - Wak
7 - U'uk
8 - Waxak
9 - Bolon
10 - Lajun
11 - Buluk
12 - Ka'a lajun
13 - Óox lajun
14 - Kan lajun
15 - Jo' lajun
16 - Wak lajun
17 - U'uk lajun
18 - Waxak lajun
19 - Bolon Lajun
20 - Jun K'aal
400 - Jun K'aax O Jun Baak
8000 - Jun Piik
160000 - Jun Kalab
3200000- Jun K'iinchil
64000000 - Jun Alaw

### Ohiko esaldi batzuk

Maia hizkuntzaz galdera ikurrak ez dira erabiltzen, berezko elementu galdetzaileak daudelako.

- Bix a beel: Zer moduz? (hitzez hitz: «nola dago zure bidea?»)
- **Ma'alob, kux teech**: Ongi, eta zu?
- **Bey xan teen**: Baita ni ere.
- **Bix a k'aaba'**: Nola duzu izena?
- **In k'aaba'e' Jorge**: Nire izena Gorka da.
- **Jach ki'imak in wóol in k'ajóolt kech**: Pozten nau zu ezagutzeak.

## Erreferentziak

1. ↑ Instituto Nacional de Estadística. XII. errolda.
2. ↑ 1986an 12 hiztun gelditzen ziren. Gordon, Raymond G., Jr. (ed.). Ethnologue, (2005).
3. ↑ Instituto Nacional de Estadística. XII. errolda.
4. ↑ Fidencio Briceño Chel: http://www.mayas.uady.mx/articulos/lengua.html

# Kanpo estekak

- *Espainiera-Maia hiztegia*. (http://aulex.ohui.net/es-myn/)
- *YUCATÁN, identidad y cultura Maya*, Yucatango Unibertsitate Autonomoaren webgunean ( (http://www.mayas.uady.mx/)UADY)
- Yucatángo maia hizkuntza. (http://www.christianlehmann.eu/ling/sprachen/maya/index.php)
- *Instituto para el Desarrollo de la Cultura Maya del Estado de Yucatán* (http://www.indemaya.gob.mx/)
- UADYko artikuluak hizkuntzari buruz. (http://www.mayas.uady.mx/articulos/lengua.html)

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q13354 · **Identifikadoreak** · GND: 4220899-3 (https://d-nb.info/gnd/4220899-3) · **Hiztegiak eta entziklopediak** · Britannica: url (https://www.britannica.com/topic/Yucatec-Maya) |

"https://eu.wikipedia.org/w/index.php?title=Yucatango_maia_hizkuntza&oldid=7301105"(e)tik eskuratuta

To ɔar

### Nabigazioa

- Azala
- Txokoa
- Albisteak
- Aldaketa berriak
- Ausazko orria
- Laguntza
- Dohaintza egin

### Tresnak

- Honanzko lotura duten orriak
- Lotutako orrietako aldaketak
- Fitxategia igo
- Orri bereziak
- Lotura iraunkorra
- Orri honen datuak
- Artikulu hau aipatu

Wikidata itema

